# Korsikera

**Korsikera** (*corsu*) Korsikan mintzatzen den erromantze hizkuntza da. Antzeko hizkuntza Sardinia iparraldean mintzatzen da Gallura eskualdean (gallurera). Italierarekin antz handia du eta sarri dialekto toskandarren multzokoa jotzen da, bi multzotan banaturik dagoena: *cismontano*a eta *oltramontano*a.

## Eduki-taula



## Historia

XIX. mendearen hasierara arte, korsikera eta italiera hizkuntza beraren bi aldaera gisa hartzen ziren, korsikera hizkuntza mintzatua eta italiera hizkuntza idatzia kontsideratuz. Frantziako Bigarren Inperioaren ostean, korsikera italieratik aldenduz joan zen eta korsikerazko literatura jaio. Hizkuntza izaeraren, aldarrikapena nahikoa berria da, XX. mendeko 80ko hamarkadakoa. Hizkuntzalari gehienentzat, ordea, korsikera Toskanako mintzairaren aldaera bat da.

## Sailkapena

Korsikera italo-erromantze hizkuntza-taldearen parte da. Korsika osoan hitz egiten da, Bonifacio eta Calvi hirietan izan ezik, non genovar jatorriko dialekto liguriarra hitz egiten baita. Korsika hegoaldeko hainbat aldaera, era berean, Sardinia iparraldeko mintzairaren (gallurera) oso antzekoak dira. Hizkuntzalari gehienen iritziz, hortaz, Sardinia iparraldean hitz egiten dena korsikera da sardinieraren ordez.

Korsikeraren hizkuntzalariek *hizkuntza polinomiko*az hitz egiten dute, tokiko aldaerak azpimarratuz. Nazionalismo korsikarrak korsikeraren hizkuntza izaera azpimarratu du. Egun, lehen hezkuntzan irakasten da eta *Frantziako hizkuntza* estatusa du, Frantziako Kultura Ministerioaren eskutik.

## Datu soziolinguistikoak

145.700 lagun inguru dira korsikeraz mintzatzeko gai eta 86.000-130.000 inguruk darabilte, 2013ko abenduan argitaratutako aurreneko inkesta soziolinguistikoaren arabera. Arazoa hiztunen eta hizkuntza ezagutzen dutenen adinean datza: zenbat eta gazteago, orduan eta apalagoa da korsikeraz dakitenen eta hitz egiten dutenen batez bestekoa. Korsikeraz gai dira 65 urtetik gorakoen % 75 eta 18-24 urte artekoen % 37; erabileran, berriz, 65 urtetik gorakoen % 64k eta 18-24 urte artekoen % 26k jarduten dute.

Ama hizkuntzari dagokionez, 65 urtetik gorakoek diotenez, sei urte zituztenean, korsikera % 30en ama hizkuntza zen eta % 54rena, frantsesa. Orain, 18-24 urte dituztenei galdetuta, berriz, sei urte zituztenean % 2k etxean korsikeraz egiten zutela diote eta % 70k, frantsesez.

## Korsikera hezkuntza publikoan

**Korsikera**

Lingua corsa — Corsu




Korsikako hizkuntza eta dialektoak.

| | |
|---|---|
| **Datu orokorrak** | |
| **Lurralde eremua** | Frantzia, *Italia* |
| **Hiztunak** | 400.000 (zalantzazkoa, ziur aski 100.000 inguru) |
| **Rankinga** | *ez 100 mintzatuenen artean* |
| **Ofizialtasuna** | - |
| **Eskualdea** | Korsika<br>*Sardinia iparraldea* |
| **UNESCO sailkapena** | 3 arrisku ziurran |
| **Araugilea** | - |
| **Hizkuntza familia** | |
| hizkuntza nostratikoak<br>Hizkuntza euroasiarrak<br>Indoeuropar hizkuntzak<br>Italiar hizkuntzak<br>Hizkuntza erromantzeak<br>italo-mendebaldeko hizkuntzak<br>Italo-Dalmatian languages (en)<br>Italian romance languages (en) | |
| **Informazio filologikoa** | |
| **Hizkuntza-tipologia** | subjektua aditza objektua eta silabadun hizkuntza |
| **Alfabetoa** | latindar alfabetoa |
| **Hizkuntza kodeak** | |
| **ISO 639-1** | `co` |
| **ISO 639-2** | `cos` |
| **ISO 639-3** | `cos` |
| **Ethnologue** | `cos (http://www.ethnologue.com/language/cos)` |
| **Glottolog** | `cors1241 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/cors1` |

| | |
|---|---|
| | 241) eta cors1242 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/cors1242) |
| **Wikipedia** | co (https://co.wikipedia.org) |

Hezkuntza publikoaren eskumena Frantziarena da, baina Korsikako Lurralde Kolektibitatearekin hitzartuta, astean gutxienez hiru orduz ikasten dute ikasleek irlako hizkuntza. Gurasoak elebitasunaren aldekoak dira: % 52k nahi dute eskolan korsikera eta frantsesa neurri berean erabiltzea, eta % 39k nahiago dute korsikera hautazko ikasgaia izatea.

# Korsikera komunikabideetan

Komunikabideen eskaintzan, berriz, handia da desoreka Korsikako bi hizkuntzen artean: telebistan, France 3 Via Stella Frantziako kate publikoan korsikerazko hainbat saio ikus ditzakete; irratian, RCFM —publikoa— elebiduna da, baina frantsesa gehiago darabilte; azkenik, prentsa idatzian, *Corse Matin* egunkaria nagusia da, eta ez dakar ia deus korsikeraz.

# Korsikeraren koofizialtasuna

2008an koofizialtasunaren aldeko mozio bat aurkeztu zen Korsikako Biltzarrean, baina ez zen onartu. 2011n mozio bera aurkeztu zen, eta onartua izan zen, eta, 2011tik 2013ra, Korsikako Biltzarreko alderdi guztietako hautetsiak, sindikatuak eta hainbat arlotako eragileak bildu zituen lantalde bat osatu zuten, korsikeraren sustapena gizarteratzeko; 30 bilera egin zituzten, eta 2013ko maiatzean, koofizialtasun estatutua bozkatu zuten: 36 boto alde eta 15 abstentzio; inor ez kontra.

# Musika korsikeraz

Korsikerak musika du indargune nagusia, % 93k entzuten baitute musika korsikeraz.

# Etorkizunerako estrategiak

Korsikar gizarteak elebiduna izan nahi du (% 90 alde eta % 7 aurka). 2011-2014 eperako ekintza plan bat izan dute horretarako, eta bertan proposatu dute, besteak beste, hezkuntzan murgiltze eredua ezartzea eta Interneten *.csc* domeinua sustatzea.

# Ikus, gainera

- Gallurera
- Sassariera
- Europako hizkuntza gutxituak
- Frantziako hizkuntzak

# Kanpo estekak

- **(Korsikeraz)** Accademia Corsa (http://www.accademiacorsa.org)
- Korsikerari buruzko erreportaia *Berria*n (http://www.berria.eus/paperekoa/2906/015/001/2014-07-10/hizkuntza_gaztetu_nahian.htm)


Hizkuntza honek bere Wikipedia du: Bisita ezazu.

| | |
|---|---|
| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q33111 · Multimedia: Corsican language (https://commons.wikimedia.org/wiki/Category:Corsican_language) |
| | **Identifikadoreak** · BNF: 11951846n (https://catalogue.bnf.fr/ark:/12148/cb11951846n) (data) (http://data.bnf.fr/ark:/12148/cb11951846n) · GND: 4165358-0 (https://d-nb.info/gnd/4165358-0) · AAT: 300388180 (https://www.getty.edu/vow/AATFullDisplay?find=&logic=AND&note=&subjectid=300388180) · **Hiztegiak eta entziklopediak** · Britannica: url (https://www.britannica.com/topic/Corsican-language) |

| **Hizkuntza erromantzeak** | |
|---|---|
| **Ekialdekoak** | Aromaniera • **Errumaniera** (moldaviera, valakiera) • Istro-romaniera • Meglenera |
| **Hegoaldekoak** | Sardiniera (campidanera, logudorera, sassariera) |
| **Mendebaldekoak** | Astur-leonesa (asturiera, extremadurera, leonesa, mirandesa, montañesa) • Borgoinera • *Dalmaziera* • Emiliano-romagnoloa • Erretorromaniera (erromantxea, friuliera, ladinoa) • Franche-comtera • Frankoprovenzera • **Frantsesa** • Galiziera (eonaviera, fala) • Galoa • **Gaztelania** (kaloa, latinoamerikar gaztelania) • Istriera • **Italiera** • **Katalana** (algerera, balearrera, erdialdekoa, valentziera) • Korsikera (gallurera) • Ladinoa • Liguriera (genovera, monakoera) • Lombardiera • Lorrenera • *Mozarabiera* • *Nafar-aragoiera* (aragoiera, *errioxera, nafar erromantzea*) • **Napoliera** • Normandiera (jerseyera, guerneseyera) • Okzitaniera (gaskoia, limousinera, proventzera) • Piemontera • Pikardiera • Poitevin • **Portugesa** (afrikar portugesa, brasildar portugesa) • **Siziliera** • Valoniera • Veneziera • Xanpainera |

Letra *etzanez*: hizkuntza hilak. Letra **lodiz**: 5 milioi hiztun baino gehiagokoak. Parentesi artean: parentesiaren ezkerrean dagoen hizkuntzaren dialektoak.



To ɔar

